

**AHT Gelditu! Elkarlanak**, AHTrekiko erabateko errefusa agertzen du, egitasmo antiekologiko, antisozial, baliabide xahutzaile eta Euskal Herriarentzat ez aproposa deritzolako eta batere informaziorik eta herritarren parte hartzerik gabe jorratu dutelako.

**AHT Gelditu! Elkarlanak**, gehiengo sozial eta sindikalaren aldarriarekin bat eginik, egitasmoa berehala gelditu, informazio egiazkoa eta objektiboa zabaldu eta, instituzioak ezartzen ari diren garraio, lurraldea antolaketa eta gizarte ereduen aldaketa sakona burutze aldera, herri eztabaida zabalari bide eman dakion exijitzen du.

**www.ahtgelditu.org**

## > ABIADURA HANDIKO TRENA

# ZER ARI ZAIZKIGU EZKUTATZEN?




**Zaldibia** (Gipuzkoa)
**900 metroko luzera eta 80 metroko garaierako biaduktua**
**“Nafar Korridorea” eta “Euskal Y”-ren arteko lotunea (E/H1 alternatiba)**

# Aramaio Araba



**1.400 metroko luzera eta 77 metroko garaierako biaduktua.**

2.560 eta 555 metroko luzerako tunelak. “Puesto de Adelantamiento y Estacionamiento de Trenes” delakoa, 1.500 metro luze eta 40 metro zabal litzatekeena (6 burdinbide). Begi-inpaktu eta zarata ikaragarriak. Mendi mozketa, lubaki eta lubeta erraldoiak eta lur mugimendu handia (469.300 $m^3$; 78.217 kamioi). 3 hondakindegi: 2 milioi $m^3$ eta 11 hektarea, 900.000 $m^3$ eta 9,2 hektarea eta 200.000 $m^3$ eta 2,8 hektareakoak hurrenez hurren.



# Bilbo Bizkaia





**Biaduktu eta mendi mozketa handiak.**

Ikus-inpaktu eta zarata handiak: 104 dB arteko zarata etxeekiko hurbiltasuna dela eta.
Obrek iraun bitartean, 5 milioi $m^3$ (833.333 kamioi) lurren garraioa.
Horri, erlaitz berean kokaturiko A-8a, RENFE arruntaren linea, FEVE linea eta eraikuntza lanetan den Super-Sur Metropoliarraren inpaktuak gehitu behar zaizkio.

## Lehuntze Lapurdi



**3.025 metroko luzerako biaduktua Atturri ibaiaren gainean.**

Kalte larriak ibaiaren ertzetan eta balio ekologiko handiko hezeguneetan (hegaztien babes eremua).

Sakonera handiko jalkin-eremua, horren ezaugarri zorrotzak dituen azpiegitura bat eraikitzeko guztiz desegokia.



# Tolosa Gipuzkoa



**1.600 metro luzerako zuzena, orotara 640 metro luzerako eta 25 eta 45 metro arteko garaierako 4 biadukturen segidaz.**

Auzoetatik oso gertu pasako litzateke: San Esteban (300 metrotara), Berazubi (200 metrotara) eta Olarrain (100 metrotara); honek osasunerako kalte larriak eragin ditzake.



# < Elorrio Bizkaia

## 870 metroko luzera eta 88 metroko garaierako biaduktua

Irundik eta Gasteiztik Bilbora joango liratekeen "Euskal Y"-aren trazatuen korapiloa. Begi-inpaktu eta zarata ikaragarriak. Kalte larriak interes ekologiko handiko guneei eta Udalaitz mendiko lur azpiko urei. Kalte larriak Iguriako auzuneari (Amuskibar, Olakua, Olalde, Urikoazpikoa, Urikogane, Larrazabal eta Torre-Urkizu baserrien suntsipena).

Argazkia: ASTOLA ALDIZKARIA

# Arakil bailara

Nafarroa





## 10-15 metro garaierako lubetak.

10 biaduktu (AHT-ren trazatuak dozena bat aldiz zeharkatuko lituzke Arakil ibaiaren meandroak). 1.600 eta 1.300 metroko luzerako tunelak. Kalte larriak bailara osoari, hala nola, Izurdiaga eta Etxarren herrien partizioa, beste zenbait azpiegiturek, hola nola, Sakanako auobideak, dagoeneko eragiten duten barrera efektuaren areagotzea, nekazal lurren okupazioa, Larraun eta Arakil ibaien gainezkatzea ibarren suntsiketa…

# Atxondo Bizkaia



**1.080 metroko luzera eta 60 metroko garaierako biaduktua Apatamonasterioko auzunetik 200 metro eskasera.**

Zarata maila ikaragarria, pertsonen osasunean kalteak eragin litzakeena.
MECSA enpresak Atxondoko Udalerako 2003an egindako ikerketak, inpaktu bortitzak aurreikusten ditu, hala nola, kalte larriak Kapela, Bolin-bizkerra, Elorrixa eta Urkitxeko bizilagunen bizi kalitate eta bizi moduari, kalte larriak Urkiolako parke naturaleko ingurumariko paisaia eta ingurugiroari eta herriaren populazio galera.





# Ezkio-Itsaso

## Gipuzkoa



**“Puesto de Adelantamiento y Estacionamiento de Trenes”: 42-56 metroko zabalerako (6-8 burdinbide) eta 1.500 metroko luzerako plataforma.**

Eraikuntza lanen zabalera: 100-130 metro.

“Merkantzien geltoki logistiko” eta bidaiarientzako geltoki bana aztergai (Eusko Jaurlaritzak “AHTrekiko aldekotasun soziala erdiesteko faktore” gisa proposaturikoa).

Kalte oso larriak udalerri osoari. 10 baserriren suntsipena.

# Angiozar Gipuzkoa

## 3 trenbidetan banatzen da

Erdiko trenbidea, “burdinbide bikoitza”, Irun-Gasteiz norantza. Alboetan, “burdinbide bakarrekoak”, Irun-Bilbo norantza.
Tramu guztia lursailean joango litzateke, horretarako beharrzkoak ziren luerausketak eta betegarriak egin beharko zirelarik.
2 zabortegi aurreikusten dira, 6 eta 15,4 hektareakoak.



# Abiadura Handiko Trena

## 1 Kaltea konponezinezko egingo lioke Ama Lurrari

Barrera efektua, zarata ikaragarria, paisaiari eraso bortitza, lurren okupazioa, akuiferoen suntsiketa, energia kontsumoaren biderkatzea, hondakinetarako hamaika zabortegiren sorrera, balio ekologiko handiko ekosistemen kaltetzea...

## 2 Lurralde desorekak areagotuko lituzke

Hiriburuen arteko lotura besterik ez luke egingo, hirietan aglomerazioa bultzatu eta kalte larriak eragingo lizkieke nekazaritzari eta oro har herrietako eta nekazal eremuko bizi modu eta bizi-kalitateari.

## 3 Tren garraioa zerbitzu publiko eta unibertsala delako kontzeptua lurperatu egingo luke

Guztiok ordainduko genuke baina, aurreikusitako ibilbide eta salneurriak aintzat harturik (30 euro inguru Bilbo-Donostia ibilbiderako), gutxi batzuek soilik erabili ahal izango lukete.

## 4 Errentaren banaketaren eta gastu sozialaren murrizketa eragingo luke

AHT gure herrian inoiz ikusitako azpiegitura garestiena litzateke. Bere aurrekontua, Euskal Herria osoan, 10.000 milioi euro (1.667.000.000.000 pezeta) ingurukoa da. Behar sozial asko soluziobiderik gabe geldituko lirateke AHT burutuko balitz. Aitzitik, Eusko Jaurlaritza beraren esanetan, dirutza horren %83 eraikuntza enpresen poltsikoetara joango litzateke zuzen-zuzenean.

## 5 Ez lituzke egungo trafiko eta garraio arazoak konponduko

Batetik, hirietan bakarrik geldituko litzateke eta, ondorioz, ez lituzke eskualde barruko joan-etorriak (eguneroko joan-etorri motorizatuen %97) ahalbidetuko. Eta bestetik, ez lioke gure errepideak egunero zeharkatzen dituen nazioarteko kamioi kopuruaren (11.000) urteko hazkundeari (%13) ere aurre egingo.

## 6 Prekarietate laborala areagotu eta deslokalizazio industriala erraztu egingo lituzke

AHT bezalako garraio azpiegitura erraldoiek zeresan handia dute ekonomiaren eta merkatuen globalizazioan eta, beraz, baita haien ondoriozko prekarietate laboralaren eta deslokalizazio industrialen areagotzean ere.

## 7 Neoliberalismoaren adibide esanguratsua da

AHTk, gero eta desoreka ekologiko eta ezberdinkeria sozial handiagoak sortzen ari den eredu ekonomiko eta soziala indartu egingo luke.

## 8 Inposatutako egitasmoa da

AHTren egitasmoa batere informazio gardentasunik eta herritarren parte hartzerik gabe jorratu dute. Informazioa propagandarekin ordezkatu dute, eta herritarren parte hartze eta erabakitze eskubidea automatikoki baztertzen diren helegiteak aurkeztu ahal izatera mugatu dute. Gehiengo sozial eta sindikalak AHT gelditzea eta herri eztabaida zabala egitea eskatzen du. Aitzitik, egitasmoaren arduradunek entzungor egiten eta inposaketaren bidean pausu berriak ematen jarraitzen dute.

# INFORMAZIO ETA PARTE HARTZE EZA <

Herritarren iritzia argia da, unibertsitateko irakasleek 2007ko martxoan "Euskal Y"-k zuzenean kaltetutako herrietan egindako iritzi ikerketaren emaitzek erakusten duten bezala: instituzioek AHTren inguruan eskainitako informazioa ez nahikoa eta inpartzialtasunik eta objektibotasunik gabea izan da. Gainera, ez dute biderik eskaini herritarrek eztabaida eta erabakietan part hartu ahal izateko. Bada beste ondorio esanguratsu bat: gero eta informazio gehiago izan, orduan eta aurkakotasun handiagoa agertzen dute herritarrek.

## Herritarroi eztabaidarako eta erabakietan parte hartzeko eskaini zaizkien bideak nahikoak izan direla uste duzu?




## Zenbatero erabiliko zenuke AHT?




## Erakundeek AHTari buruz emandako informazioaren balorazioa
(nahikoa edo gutxiegi izan den)




## Erakundeek AHTri buruz emandako informazioaren balorazioa
(objektiboa edo interesatua izan den)




## AHTri buruzko informazioa eta iritzia
(aldeko edo aurkako jarrera azaltzen dutenen banaketa, duten informazio mailaren arabera)



## ERAIKUNTZAREN KOSTUA <

**10.000 milioi euro (1.667.000.000.000 pezeta).**

30 milioi euro (5.000 milioi pezeta) kilometro bakoitzeko. "Euskal Y"-a eta Nafar Korridorearen kostua (9.000 milioi euro), alokairu sozialeko 99.530 etxebizitza berriren eraikuntzaren edo 200.000 etxebizitzaren birgait earen kostuaren baliokidea da.

## IBILBIDEAREN LUZERA <

**426 km.** 278 gainazalean; 144 tunelean (121 tunel); 30 biaduktuan (113 biaduktu). "Euskal Y": 194 Km. Abiadura Handiko Nafar Korridorea: 190 Km (Gipuzkoan "Euskal Y"-arekin lotura barne). TGV linea berria Lapurdin: 42 Km (1992ko aurre-ikerketaren arabera). Euskal Herrian inoiz ikusitako azpiegitura handiena.

## ESPLOTAZIO KOSTUA <

**Garraiobideen artean handiena.**

Autobusa: 3,9 pta/plaza-km; ibilbide luzeko tren arrunta: 6,9; automobila: 9,1; hegazkina: 11,5; AHT: 22,6 pta/plaza-km. Ez litzateke ez eraikuntza kostua ez esplotazio kostua estaltzeko gai izango, eta ondorioz, finantzazio publiko iraunkorra beharko luke funtzionatu ahal izateko.

## ZUZENEAN KALTETUTAKO UDALERRI KOPURUA <

**112 Udalerri.**

Gipuzkoako udalerrien %40; Lapurdikoen %32; Bizkaiako eta Nafarroakoen %15; Arabakoen %6. Aurreikusitako geltoki kopurua: 5.




# < Trazatua

Gure ingurumenean kalte izugarriak eta gizartean ondorio latzak eragingo lituzkeen proiektu honen aurrean jendarteko eztabaida zabaldu eta hausnarketa kritikoa sakontzea beharrezkoa dela uste dugu.

AHTk ingurumenean, gizartean eta ekonomian izango dituen ondorio latzak eztabaida publikoari ezkutatu eta gizartearentzat funtsezkoa den arazo honetan herritarrei erabakitzeko aukera minimorik eman gabe, inposizioa beste biderik ez duen proiektu hori ezarri nahi dute.

Horrela, egungo egoeran argi agertzen da mobilizazioa eta AHTren inguruko eztabaida bultzatzea zein premiazkoa den, botereak tren honen inposaketa nolanahi onartua izan dadin lortu nahian darabilen propaganda eta faltsukeria gezurtatzeko.